# URTEAN ZEHARREKO XII. DOMEKA

## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Harek askatu dau gaiztoaren eskutik behartsuaren bizia.*

Jeremias Profetaren liburutik

*Jr* 20, 10-13

Honan berba egin eban Jeremiasek:
«Jentearen amenazuak entzuten ditut,
bildur-ikara nonahi:
"Salatu, salatu dagigun".
Adiskideak eurak be begira ditut, nik noiz huts egingo:
"Ea engainatzen dogun, dinoe;
orduan menperatuko dogu eta mendekua hartuko".

Baina neugaz dot Jauna, gudari indartsu;
jausiko dira nire arerioak, ezin izango nabe garaitu;
hareen asmoek porrot egingo dabe,
hareen lotsa sekulakoa izango da, ahaztuezina betiko.
Jaun ahalguztiduna, zuzen aztertzen dozuna,
gizakiaren buru-bihotzak ikusten

dituzuna,
zure esku itzi dot neure auzia:
ikusiko ahal dot zure mendekua arerioen gain!

Kanta Jaunari, goratu egizue Jauna,
harek askatu dau-eta gaiztoen eskutik behartsuaren bizia».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 69 [68], 8-10. 14 eta 17. 33-35 (R/. 14c)

R/. **Erantzun, ene Jainko, zeure maitasun handiaz.**

V/. Zugaitik jasan ditut irainak,
Zugaitik lotsaz gorritua dot aurpegia.
Arrotz geratu naz neure senideentzat,
ezezagun neure amaren seme-alabentzat.
Zure tenpluaren maiteminak erretzen nau,
eta gainera datorkidaz Zuri egindako irainak. R/.

V/. Baina nik Zuri dagitsut otoitz;
mesede-sasoia dozu, Jauna.
Erantzun, ene Jainko, zeure maitasun handiaz,
zeure salbazino leialaz.

Erantzun, Jauna, samurra da-eta zure maitasuna,
bihurtu nigana begiak zeure erruki handiaz. R/.

V/. Ikusi egizue, apalok, eta poztu,
izan bihotz, Jainkoaren bila zabiltzenok.
Izan be, entzuten deutse Jaunak behartsuei,
ez ditu gitxiesten berari lotuak.
Goratu begie zeru-lurrek,
itsasoak eta bertan bizi diran guztiek. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Jainkoaren dohaiagaz*
*ez da pekatuagaz lez jazotzen.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 5, 12-15

Senideok: Gizon baten bidez sartu zan pekatua munduan, eta pekatuaren bidez heriotza; holan, heriotza gizaki guztiengana zabaldu zan, guztiek egin ebelako pekatu. Egia da legea baino lehen bazala pekatua munduan; baina pekatua ez jako inori ezartzen, legerik ez badago. Halan be, Adamengandik Moisesenganaino nagusi izan zan heriotza gizakien gain, baita Adamen

hutsegitearen antzeko pekaturik egin ez ebenen gain be. Adam etortzekoa zanaren irudi da.

Baina Jainkoaren dohaiagaz ez da pekatuagaz lez jazotzen. Izan be, gizon bakar baten pekatuaz danak hil badira be, askoz ugariago zabaldu da danentzat Jainkoaren grazia eta dohaia, beste gizon bakar bati esker, Jesu Kristori esker, hain zuzen be.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Jn* 15, 26b. 27a

R/. **Aleluia.**

V/. Egiaren Espirituak autormen egingo dau nire alde,
dino Jaunak,
eta zuek be egingo dozue autormen. R/.

## EBANJELIOA

*Ez izan bildurrik gorputza hiltzen dabenei.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 10, 26-33

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen apostoluei: «Ez izan jentearen bildur! Egon be, ez dago ezer gordeta agertuko ez danik, ezta ezer ezkutuan be jakingo

ez danik. Gaueko ilunpean esaten deutsuedana esan zuek egun-argitan, eta belarrira entzuten dozuena iragarri etxe-gainetatik. Ez izan bildurrik gorputza hil bai, baina bizia kendu ezin dabenei; izan bildur, gorputza ez ezik, pertsona osoa be infernuan galdu leikeanari.

Ez ete dira txori bi txanpon baten saltzen? Halan be, ez da bat bakarra be lurrera jausten zuen Aitaren baimenik barik. Zuen buruko uleak be zenbatuta ditu Jainkoak. Ez, bada, bildur izan; txori guztiek baino gehiago balio dozue zuek.

Jentearen aurrean autortzen nauana autortuko dot Neuk be zeruko neure Aitaren aurrean; baina jentearen aurrean ukatzen nauana ukatu egingo dot Neuk be zeruko neure Aitaren aurrean».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XII. DOMEKA
## B urtean

## I. IRAKURGAIA

*Hemen lehertuko da zure olatuen harrokeria.*

Joben liburutik

*Jb* 38, 1. 8-11

Jaunak ekatxaren erditik erantzun eutson Jobi:
«Nork itxi eban itsasoa atez,
amaren sabeletik indarka urten ebanean?
Neuk emon neutsazan hodeiak soinekotzat
eta behe-lainoa ume-zapitzat.
Neuk ezarri neutsazan mugak,
ateak eta morroiloak ipiniz,
eta esan neutsan: "Honaino helduko zara, ez aurrerago;
hemen lehertuko da zure olatuen harrokeria"».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 107 [106], 23-24. 25-26. 28-29. 30-31 (R/. 1)

R/. **Eskerrak Jaunari,**
**haren maitasuna betikoa da-eta.**
Edo: **Aleluia**.

V/. Itsasora jo eben ontzietan
salerosketan jarduteko ur handietan,
eta Jaunak eginak ikusi ebezan,

haren egintza harrigarriak itsaso zabalean. R/.

V/. Haren esanera ekatx-haizea jagi zan,
olatu handiak harrotuz.
Zeruan gora, lezean behera ibili ziran,
barrua zorabioz larri. R/.

V/. Baina larrialdian Jaunari deadar egin eutsoen,
eta libratu ebazan estualditik.
Ekatxa barealdi bihurtu eban
eta olatuen orroa isildu egin zan. R/.

V/. Poztu ziran barealdiaz,
eta euren gogoko portura eroan ebazan Jaunak.
Goratu begie Jauna agertu dauan maitasunagaitik,
gizakien alde egiten dituan gauza harrigarriakaitik! R/.

## II. IRAKURGAIA

*Barria hasi da.*

San Paulo Apostoluak Korintotarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 5, 14-17

Senideok: Kristoren maitasunak behartzen gaitu, jakinik bat danakaitik hil dala eta, ondorioz, danak hil dirala. Kristo danakaitik hil da, bizi diranak ez

daitezan eurentzat bizi, eurakaitik hil eta biztu dan harentzat baino.

Beraz, hemendik aurrera guk ez dogu inor giza ikuspegi hutsez baliotuko; eta inoiz Kristo giza ikuspegi hutsez baliotu izan badogu be, orain ez dogu halan egiten. Beraz, Kristorena dana sorkari barri da; zaharrarenak egin dau, barria sortu da.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Lk* 7, 16

R/. **Aleluia.**
V/. Profeta handia sortu da gure artean,
eta Jainkoa bere herria salbatzera etorri da. R/.

## EBANJELIOA

*Nor ete dogu hau,*
*berak esana egiten dabe-eta haizeak eta itsasoak be?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 4, 35-41

Egun haretan, ilunabarrean, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Goazen itsasoaz bestaldera».

Jentea itzi eta ontzian eroan eben Jesus, egoan moduan. Beste ontzi

batzuk be jarraitu eutsoen. Horretan, haize-bolada zakarra atara eban, eta olatuek ontzia jotzen eben, ia urez betetzeraino. Jesus, barriz, txopan lo egoan, buruko baten gainean. Itzartuazo eta esan eutsoen: «Maisu, ez ete deutsu ardurarik gu galtzeak?» Harek, itzarturik, hasarre egin eutson haizeari, eta itsasoari esan: «Hago isilik! Geldi!» Gelditu zan haizea, eta barealdi handia egin zan.

Jesusek esan eutsen: «Zergaitik bildur hori? Ez ete dozue oraindino sinismenik?» Bildurikaraz gelditu ziran, alkarri esanez: «Nor ete dogu hau ze, berak esandakoa egiten dabe haizeak eta itsasoak be?»

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XII. DOMEKA
## C urtean

### I. IRAKURGAIA

*Zulatu ebenari begiratuko deutsoe.*

Zakariasen Profezia liburutik

*Za* 12, 10-11; 13, 1

Hauxe dino Jaunak: «Onginahi- eta otoitz-espiritua isuriko dot Daviden ondorengoen gainera eta Jerusalemgo bizilagunen gainera; niri begiratuko deuste, zulatu ninduen honi. Dolu egingo dabe, seme bakarragaitik lez; negar samina egingo dabe, lehen-semeagaitik egiten dan lez. Egun haretan handia izango da dolua Jerusalemen, Hadad-Rimon jainkoari Megidoko lautadan egiten jakona lakoa. Egun haretan iturburu bat sortuko da, Daviden ondorengoen eta Jerusalemgo bizilagunen pekatua eta kutsadura garbitzeko».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 63 [62], 2. 3-4. 5-6. 8-9 (R/. 2c)

R/. **Zure egarriz daukat gogoa, Jauna, ene Jainkoa.**

V/. Jainko, Zu ene Jainko,
goizetik nabilkizu bila,
zure egarriz daukat gogoa, zure gogo biziz ni nazan guztia,
lur idor, agor, ur bakoa lez. R/.

V/. Holan egon nahi dot santutegian Zuri begira,

zure indarra eta ospea ikusiz.
Bizia baino ederragoa da-eta zure maitasuna,
goratuko zaitue nire ezpanek. R/.

V/. Holan nahi zaitut bedeinkatu neure bizitzan,
eskuak jaso zure izenean.
Jakirik gozoenez lez naz asetuko,
eta nire ezpanek poz-oihuz zaitue goratuko. R/.

V/. Zeu izan zaitut-eta laguntzaile;
pozez egingo dot oihu zure hegoen kerizpean.
Zuri lotuta nago osorik,
eta zure eskumak deust eusten. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Kristogan bateatuak zarien guztiok*
*Kristoz jantzita zagoze.*

San Paulo Apostoluak Galaziarrei egindako epistolatik

*Ga* 3, 26-29

Senideok: Guztiok Jainkoaren seme-alaba zarie, Kristo Jesusengan dozuen sinismenari esker.

Izan be, Kristogan bateatuak zarien guztiok Kristoz jantzita zagoze. Ez da orain bereizketarik judeguaren eta judegu ez danaren artean, esklaboaren

eta librearen artean, gizonezkoen eta emakumezkoen artean; zuek guztiok bat zarie-eta Kristo Jesusengan. Eta Kristorenak bazarie, Abrahamen ondorengo zarie, Jainkoaren agintzariaren oinordeko.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Jn* 10, 27

R/. **Aleluia.**

V/. Nire ardiek entzuten dabe nire ahotsa, dino Jaunak;

Nik ezagutzen ditut,
eta hareek jarraitu egiten deuste. R/.

## EBANJELIOA

*Zu, Jainkoaren Mesias zara.*
*Gizonaren Semeak asko sufridu beharra dau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 9, 18-24

Behin baten Jesusek otoitzean bakarrik ziharduala, ikasleak hurreratu jakozan, eta Jesusek itaundu eutsen: «Nor nazala dino jenteak?» Hareek erantzun eutsoen: «Batzuek Joan Bateatzailea zarala; beste batzuek Elias; besteek, barriz, antxinako

profetaren bat biztu dala». Jesusek, orduan: «Eta zuek, nor nazala dinozue?» Pedrok erantzun eutson: «Jainkoaren Mesias».

Jesusek inori ez esateko agindu eutsen zorrotz. Eta esan eutsen, gainera, ikasleei: «Gizonaren Semeak asko sufridu beharra dauka; zaharrek, abadeburuek eta lege-maisuek gaiztotzat hartuko dabe eta hil, baina hirugarren egunean biztu egingo da».

Eta hauxe esan eutsen guztiei: «Nire ondoren etorri gura dauanak uko egin beio bere buruari, hartu begi eguneroko bere kurutzea eta jarraitu beist. Izan be, bere bizia salbatu gura dauanak galdu egingo dau; baina bere bizia Nigaitik galtzen dauanak salbatu egingo dau».

Jaunak esana.